Gaur hemen aurkitzen garen lagunok, Kolektibo osoak batzen duen espetxe istorio eta esperientziatik elikatu izan garen preso politiko ohiak gara. Ezer gutxi, Kolektibo osoak batzen duen milaka eta milaka urteko esperientziarekin alderaturik.

Urte luze horiek guztiek EPPKko kide aritu gara. Harrotasun handiz esaten dugu, asko baitiogu eskertzeko Kolektiboari. Gertukoen eta Herri osoaren berotasunaz gain, EPPK izan da aurrera jarraitzeko hauspoa, kemena eta indarra eman diguna. Gure duintasuna tinko mantentzen lagundu eta burua tente eramaten erakutsi diguna.

Hamarkada luzez, baita sakabanatuta egonda, kide guztiok batera, eztabaidari ekin diogu etengabe gure ekarpenak bideratuz. Estatuen gobernu desberdinek Kolektiboaren aurka diseinatutako plan edota salbuespen neurriei aurre eginez, porrot egitera bidali ditugu saiakera guzti hauek. Horregatik diogu: Une honetan zabaldu diren aukera eta baldintzak urte luzeetako kide askoren borrokari esker izan dira.

Kolektiboa beti aritu da eztabaidan, ekarpenak eginez. Udazkena geroztik gaur arte, Nazio Askapen Mugimenduaren estrategia egokitzapena eta honek eragindako egoera politikoa oinarritzat hartuz, EPPKk une politiko eta historikoaz jabetuta, eztabaida luze eta sakona burutu du. Etsaiek ezarritako traba guztien gainetik; komunikazioaren interbentzio eta murrizketak, miaketak, toxikazio politika, damu eta xantaia eskaintza iraunkorra.... Kolektiboa gai izan da, beste behin ere, eztabaida sakona burutzeko eta egoerak eskatzen duen adinako arduraz jokatzeko.

Prozesua bultzatuz bere ekarpenarekin, Kolektiboak bere ildoa definitu du, eta Ezker Abertzale osoarekin batera, bere burua kokatu du estrategia berregokitzean. Ondorioz, euskal presoek beren izaera kolektiboa agerian utzi dute berriro ere, eta gatazkaren parte zein ondorio izanik, Kolektiboak prozesuan parte hartzeko duen eskubide osoa, mahai gaineratu dute berriz ere.

Berrikitan, GARA eta BERRIA egunkarien bidez, EPPKk bere Mintzakidetza publiko egin du. Antolakuntza berria ezagutzera eman digute aro berrirako bere prestutasuna agertuz. Egoera berriaren aurrean, antolakuntza berria eskainiz, interpelazio zein elkarrizketa bideak zabalduz, irekitako prozesuan baldintza berriak sortu nahi ditu Kolektiboak. Oraingoz, Kolektiboak bere ildoa finkatzeko eztabaida bukatutzat ematen du, eztabaida honek berez iraunkorra eta dinamikoa izan behar duela jakitun izanik ere.

Gauzak honela, eta salbuespenezko neurriak altxatzen doazen heinean, prozesuaren araberako urratsak emateko prestutasuna adierazi nahi du Kolektiboak. Borrokak ekarri du Kolektiboa honaino, eta borrokak irekiko ditu askatasuneko ateak.

Bide horretan hartutako erabaki sendoen berri eman nahi du Kolektiboak. Horretara etorri gara hona. Horretarako deitu zaituztegu. EPPKren enkarguz jakitera ematen dizuegu datorren ekainaren 2an, 11tan Gernikako Elai-Alai aretoan, Euskal Preso Politikoen Kolektiboak Euskal Herriari eta munduko herri guztiei bere eztabaidaren ondorioen berri emango diela.

Gernikan elkar ikusiko dugu. Eskerrik asko.

**Presoak kalera!**
**Amnistia – Autodeterminazioa!**

Euskal Herria, 2012ko maiatzak 26an